

# 2009ko martxoak 8

## Nafarroako 8 emakume,

## 8 esparru





nafarroan.com

# *Emakumea eta antolakuntza feminista*

## Inder Bhatti

Ukatua zaigu subjektu izatea, erabakiak hartzea.

Donibane auzoan hori zalantzan jartzen eraikitzen hasi gara gure geroa. Auzoko emakumeak eremu askotan gabiltza lanean, baina batez ere auzoaren izaera garatzen, gu ere bagarela azalaratzen.

Auzoko kale eta espazioak konpartitzen genituen lehen, baina orain elkarrekin eragiten dugu bertan. Elkarrekin hasitako harremanak gauza asko ematen ari dizkigu guri, emakumeoi eta baita auzo guztiari ere. Emakumeok bildu, eta gure errealitatea aztertzen dugunean, emakumeon kontrako indarkeriari egunero mozorroa kentzen ikasteaz gain, auzoko eremu guztietan oinarria dena garatzen hasi gara, gure herria eta auzoa eraikitzeko feminismoaren ezinbesteko garrantzia, eta etengabe inposatzen zaigun jendarte eredu patriarkalari aurre egiteko emakumeok dugun gaitasuna.



Emakumeok ez dugu oraindik hainbat eremuetan partehartzeko aukera berbera, egun oraindik gure helburuak lortzeko bikoitza lan egin behar dugu eta gure gain jotzen duen zapalkuntzak gure buruak gutxiestea du helburu.

Hori gainditzeko auzo osoaren jarrera irmoa aktibatzera goaz, emakumeok badugulako indarkeria matxista iristen den zirrikitu guztietan aurre egin eta erantzuna emanez, lorpen handiei bide eman eta dagokiguna berreskuratzeko gaitasuna.

# *Emakumea eta lurra*

## Inma Ruiz

Cuando comencé a trabajar en la tierra, en la agricultura, había muy pocas mujeres que se dedicaban a esto. El predominio de los hombres siempre ha sido evidente en este sector. En realidad, la incorporación, no sólo de la mujer, sino de la gente en general al mundo agrario no ha llegado a darse desde que tengo conocimiento. Suele ser a la inversa. El campo se va quedando vacío.

En mi caso lo tenía claro. El dedicarme a la agricultura ecológica aquí en Nafarroa responde a un planteamiento de vida, que engloba mucho más que el simple ámbito profesional. La tierra engancha, y yo lo he vivido en primera persona, a pesar de que estos últimos cinco años he estado un poco más "retirada" debido al cuidado de mis dos hijos.



Sin embargo, y a pesar de que ha sido mi elección, hay que reconocer que el trabajo en la tierra es duro (aunque también tiene sus satisfacciones!) y no tanto por el trabajo físico que se le presupone (que también) sino por la constancia que exige.

Además, hace años este trabajo estaba mucho más unido a ese esfuerzo y capacidad físca más característica de los hombres. Con la mecanización todo esto se ha relativizado un poco y facilita el trabajo a mujeres que tal vez no tengamos esa disposición física. No hay que olvidar que el trabajo físico es sólo una parte del trabajo en el campo: la organización es fundamental, y las mujeres somos buenas en eso!

Os animo a todas las mujeres, las que trabajáis en el campo y las que no a participar en la jornada del 8 de marzo. Nos queda mucho por hacer.

# *Emakumea eta lan mundua*

## Mabel Paskual



Nahiz eta krisiaren garai honetan emakumeei buruzko datuak zenbaki hutsak bihurtzen direla iruditu, sindikatuan lan egiten dugunentzat eguneko ogia izaten dira emakumeek pairatzen dituzten diskriminazoien berriak. Harrigarria bada ere, oraindik ere esaten omen digute non lan egin dezakegun eta non ez. Gizonezkoentzako lanpostuak "asmatzen" dituzte, emakumeok hainbat aukeretatik kanpoan utziz. Gainera, behin lanpostua izanda, ezberdintasunak ez dira bukatzen. Guztiok ezaguna dira soldateen ezberdintasunak kargu bera bete arren. Beti ere, emakumezkoenak baxuagoak izanki. Eta karguak aipatu ditudala aprobetxatuz, gogoratu behar da ere goi mailako karguak zeinen eskuetan egoten diren. Konserbereen kasua horren adibidea da. Enpresa horietan emakumeak gehienak izanda, kargu altuak beti gizonentzako izaten dira.

Amatasunak beste kapitulu bat beharko luke. Oraindik galdetzen digute kontratatzeko orduan ea amak garen edo izateko asmoak ditugun! Gizon baten bati galdetu diote? Eta behin ama izanda, beste lehia hasten da : amatasun atsedenaldia, ordutegien konpatibilizazioa... zergatik beti gara emakumeak lanera jaoten ez garenak haurra gaizotzen denean? agian hau gure errua da? ez al dugu ikasiko delegatzen?

Azkenik esan beharra dago, orokorrean emakumeek ez dituztela euren lan eskubideak ezagutzen. Eta enpresarioak honetaz baliatzen dira. Gure eskubideen jabe izateko, ezinbestekoa da gure eskubideak ezagutzea. Horretarako dago sindikatua. parekotasunaren alde borrokatzeko tresna ezinhobea!

Animo emakumezko langileak! Martxoaren 8an guztiok kalera!

*Emakumea eta migrazioa*

# Kenia Mendoza

Mi nombre es Kenia y contra todo pronóstico, soy de Cuba.

Al principio lo tenía claro: Venía del sur al norte, de la isla al continente, del calor al frío, del socialismo al capitalismo, de una sociedad laica a otra religiosa, o es laica?, del “atraso” a la modernidad, de la “censura” a la “libertad de expresión”. Ahora estoy convencida de que en Cuba podemos encontrar gentes-continente y en Navarra gentes-isla, gente glacial en el trópico y gente cálida en el norte, de que los buenos no son tan buenos, ni los malos tan malos, ni los laicos tan laicos, ni todos los religiosos tan solidarios; y de que lo moderno convive con lo retrógrado y lo tradicional con lo avanzado y de que la libertad de expresión es una utopía, otra….



Lo que sí he comprobado, es que en todas partes la mujer tiene cargas. No importa el apellido (familiares, sexuales, sociales, y un largo etcétera), cargas son, y muy pesadas.

Sirva este 8 de marzo, Día Internacional de la Mujer, para desear a todas que nuestras cargas se reduzcan, y que tengamos fuerzas para deshacernos de ellas. Que nos sea leve!!!

## *Emakumea eta artea*

# Miren Ustago

Artearen inguruan egin ditudan ikasketa guztietan beti izan gara, kopuruan, emakume gehiago gizonezko baino. Berriz, artearen sistemaren barruan emakumeon presentzia oso txikia da. Nork, nola eta zergaitik legitimatzen dituen gizonezkoak lan munduan ez daukat argi, bainan potere kontu bat dela uste dut.

Emakumea izan, artista, maila sozial ertainekoa, kokapen geografiko konkretu batekoa, eta hizkuntza txiki bat erabiltzea ez da praktikoa. Gaur egungo gizarteak ez du "txikia"izatea saritzen. Bainan historian borroka asko galdu dituenaren esperientzia, kontatuan artzen ez den arren, poterean dirauenarena baino aberatsgarriagoa da.

Azkenean artea militantzia bihurtu dut, aipatutako puntu guztietaz konsziente izatea bultzatzen nautelako eta arduratsuagoa naizelako nire ekintzetan.



# *Emakumea eta errepresioa*

## Maitane Intxaurraga



"Aupa neskak!". Esaldi motz honekin eman dizkiogu animoak elkarri kartzelan egin ditudan sei hilabeteetan.

Han ere, gizarte patriarkal batean beste modu batera izan ez daitekeen bezela, generoaren araberako diskriminazioa eguneroko ogia da.

Emakumeori dagokigun moduloetan masifikazioa topekoa da, eta horrek adibidez, ziegak konpartitzea dakar, eta intimitate eskubidearen defentsak zigor ziega...

Kartzelan, gizon eta emakueon artean espazioak "ezin" ditugunez konpartitu, espazioen erabilera beti da gizonen aldekoa bai denbora aldetik bai aukeren aldetik...

Ohikoagoa da gizonek aktibitate "extramodular" gehiago egin ahal izatea (kirolak, ikastaroak, tallerrak...), gu modulotik irten gabe egoten garen bitartean,...

Badakizue, gizonezkoak "berez aktiboagoak" dira eta "beharrezkoa dute soberan duten energia ahitzea"...Badakizue, kartzelan gehiago dira eta "normala da gehiengoak onura gehiago izatea"....Aitzakiak nahi adina.

Zer esanik ez komisaldegietan jasotzen dugun tratua era bat markatua egoten dela sexuaren arabera. Irainak, gutxiesteak, ikutzeak,...Beti dute zure/gure sexuari buruzko erreferentzia garbia. Gure militantzia, pentsaera, izaerari uko egiteaz gain gure gorputz eta izana desegitea bilatzen dute. Ez dakite gu, ohituak gaudela sasi guztien gainetik eta laino guztien azpitik LIBRE ibiltzen eta horretarako ez dugula erratzik behar, nahikoa dela ASKE sentitzea.

Aupa neskak! Nere nuxurik beroena hormigoi artean borrokan darraiten sorgin guztieri. Akelarrean ikusiko dugu elkar!



# *Emakumea eta kultura*

## Laura Mintegi

Gazi-geza da emakumeak kulturarekin duen harremana. Kultura diogunean zer ulertzen dugun, horretan datza gakoa. Kultura ofizialaz ari ote garen, edo ari garen identitatea eratzen duen kulturaz. Mintzatzen bagara produktu-kulturaz, salerosi daitekeen kulturaz, merkatuan dagoen horretaz, orduan gizarte patriarkalak bazter utzi du emakumea. Baina ari bagara kolektiboek atxikita duten kulturaz, beren nortasunaz, identitatea ehuntzen duen kulturaz, orduan emakumea ardatza da, kultura jaso, garatu eta hedatu egiten du, haren sortzailea eta gordailua da; emakumea ezinbesteko erreferentzia da herri baten kulturan.

Bi kultura hauen artean badago alderik alabaina. Lehenik aipatu dugun kultura, izan, sinbolikoaren eremuko da, ikonoak sortzen ditu, truke-balioa dauka eta egilearengandik enajenaturik dago. Kosifikaturiko kultura da, kontzeptua gauza bihurtu du eta mendez mende metatu den jakinduria objektu hutsa bilakatu da, artelana sortzen. Kultura honi prezioa jartzen zaio, balio zehatza du gizartean, kotizatu egiten du merkatuan.

Bigarrenez aipatu dugun kultura, ordea, komunitateari dagokiona da, berau bereizten du beste komunitateetatik, mendez mende joan da garatzen eta ikusmira jakina eman dio kolektiboari, beraren ideosinkrasia eratu du, bere kosmogonia. Kultura honek antolaketa soziala eratzen du, etxekoen arteko harremanak moldatzen ditu. Bereizgarri egiten ditu kolektiboaren janzkera eta gastronomia, balore etikoak eta ageriko estetika, sinesmenak eta usteak, tradizioak eta ohitura sozialak.

Ezinbesteko protagonismoa du emakumeak beraren kolektiboaren kulturan, sortzailea delako, trasnsmisorea delako, gordailua delako. Emakumea ormenetik hurbil dago, bizia sortzeaz gain, harremanak sortzen ditu, ingurunea eratzen du, gizataldeen arteko hari matraza trikotatzen du. Baina ez zaio ezagutzen izendatzeko ahalmenik. Boterea duenak jartzen dio izena izanari. Emakumeak sorturikoari beste batek jartzen dizkio deitura, balioa, funtzioa eta iraungi data.

Kontua da nork erabakitzen duen kulturaren prezioa; zerk daukan balio komertziala eta zerk balio domestiko hutsa; zer eramango den museora, Henry Mooreren eskultura edo Maripiliren makrame tapiza. Zer erosteko ordainduko diren ilaka euro enkantean, Tapies-en koadroa edo amamaren txokolatezko pastel berezia.

Humpty Dumptyk zioen*, Lewis Carrollen *Ispiluan barrena* -n, kontua ez dela zer esanahi ematen diogun hitz (gauza) bati, baizik eta patroia nork izan behar duen, hau da, nork erabakitzen duen gauzen balioa. Kontua da, zioen, nor den patroia.

* "When I use a word," Humpty Dumpty said in a rather a scornful tone, "it means just what I choose it to mean – neither more nor less."
"The question is," said Alice, "whether you can make words mean different things."
"The question is," said Humpty Dumpty, "which is to be master – that's all."

## *Emakumea eta teknologi berriak*

## “Remigia Agostini”

Agerian dago bizitzaren esparru aunitzen teknologizaziorako joera, eta era berean zientzia zein teknologia sailetan emakumeok izandako bigarren mailako izendapena ere eztabaidaezina da, gehienetan ikusezin bilakatzen gaituena. Baina gaur egun emakumea-teknologia tandema beste modu batean izendatu behar litzatekeelako susmoa daukat, teknologiak errealitate sozial ezberdinen sorrera eta gatazken izendapen eta bilakaeraren bultzatzaile bilakatu delako.



Nla ultko gnitzk gzteenk tknlgirk gb? Posible izenen litzateke emakume etorkinek buruturiko zainketa transnazionalen zirkuituen sorrera komunikazio teknologikorik gabe? Sare teknofeministen izaera bera non legoke, bestela? Mugikorren erabilerak, blog-ek, foroek, twiter-ek bestelako tokian kokatu gaituzte.

Emakumeak eta teknologia elkartzen dituen diskurtsoaren atal bat besterik ez da hau; lehen mundua, kapitalismo aurreratua eta ongizatearen gizarte txikituan du kokapena, ez beste inon, baina hor bertan emakumeak teknologien erabilpenean gutxituak daudelako premisatik ihes egin nahi du, dudarik gabe.